# VERSO BERRIAC
# URSULA JUAMBELTZ-I JARRIAC

1
Milla zortzireun laroguei eta
Amairugarren urtian,
Verso berriac jartzera nua
Ichura eder batian:
Escandalo bat nic izandu det
Nescacha baten artean,
Nun oro claro itz eguingo det,
Or, Azpiroz-co partian.

2
Nescacha orrec ezcondutzeco
Baceucan intenciyua,
Gurasuaquiñ tratatu eta
Eguiñ zan componciyua:
Gendia francoc jaquiñ biar du
Pasatu dan funciyua,
Nola diraden icasitzeco
Eduqui atenciyua.

3
Ustez ezcontza eguiñagatic
Ez digu asco servitu,
Cembait nescachec bere artian
Trampa gogorrac baditu:
Prueba bat orri icusi eta
Seculaco naiz arritu,
Icusgarrizco gauzac badira
Ondo esango banitu.

4
Noviyorican etzeducala
Dama orrec ciran esan,
Nere artian pensatu nuben
Fiñ-samarrembat ote zan:
Ezcondutzeco aguindu niyon,
Novedadia laister zan,
Orain versuac argatic dira,
Iñor engaña ez dezan.

5
Ursula Juambeltz izan biar du
Dama orrec bere graciya,
Orrequiñ nitzan ezcondutzeco
Pensamentuban asiya:
Au Azpiroz-en jayua dala,
Gañera Ventan aciya,
Ni inocente egon banitzan
Baceducan maliciya.

6
Nescacha orri nic esan niyon
Josten icasi cezala,
Arren gastuba pagatutzeco
Conforme izango nitzala:
Apaindu eta or ibilli da
Dama fiñenac becela,
Mereci du ta nolacua dan
Gendiac jaquiñ dezala.

7
Familiraco comeni dana
Izan biar du jostia,
Orregatican nai izan nuben
Lan ori eracustia:
Ibilli zan ta nere boltsatic
Cuarto batzuec costia,
Bera gaistua dala mediyo
Guertatu zayo uztia.

8
Apirillaren amaseyian
Procesiyuan Lecetan,
Icusi nuben nola cebillen
Comeni etzan gaucetan:
Nic esan niyon: gaizqui zabiltza;
Ez zuben artu ecortan;
Ori ez baño beste batzubec
Egondu ciran lotsetan.

9
Emeretzi egun Apirillian
Ori Santa guerician,
Mutill ascori quiñuca egon zan
Meza dembora guciyan:
Obra onari burla eguiñaz,
Oso modu itsusiyan,
Orrelacua ¿nola egongo da
Jaungoicoaren graciyan?

10
Elizatican atera eta
Guero meza ondorian,
Orduban ere ibilliya zan
Modu ichura gabian:
Mutillac iru guchiyenian
Nescacha orrec parian,
Etzuen asco arcacosuac
Ori penatu bidean.

11
Bere itzian fiñ egoteco
Cer nescacharen moduba,
Iñon-ere eciñ asentatu da,
Arrua dauca buruba:
Orregatican igarri dizut
Ez cerala seguruba,
Ez ciñaque zu orla ibillico
Baciñaque azgauduba.

12
Lagun on batec encargatu ta
Artu det erreparua,
Azari zar bat badabillela
Anca bico agurua:
Nescacha orri contu eguiteco
Ez banitzaden erua,
Eguiña dago lenguac baño
Gauza alrevesagua.

13
Icasi naya nic baneucan
Gauz-ori nola cijuan,
Apirillaren oitabatian
Jarri naiz puntu fijuan:
Entero lasa ni enegoan
Leyo onduan campuan,
Orduban bertan arrapatu det
Azari zarra cepuan.

14
Lenago ere eguiñ citubon
Modu ortaco pausuac,
Bertan gueldituu bear zubela
Mutill maleciosuac:
Ursularequiñ lo eguiteco
Ots eguiñ ciyon atsuac,
Su eman eta erre biar du
Orrelaco gurasuac.

15
Leyo zulotic celatan neuan
Odol danac iraquiñ da,
Cuidado gabe ustez cebiltzan
Elcarren berri jaquin da:
Ursula ori lenagotandic
Ceuan oyan etzin da,
Araquiña da bere oficiyoz,
Azari ori Joaquiñ da.

16
Juan zanian itz eguiñ ciyon,
¿Emen al-zaude maitea?
Arguiya escuan ceducalaric
Miratu zuben oi-pia:
Ustez seguru jarri zanian
Guero ichi du atia,
Jaquiña dago cer izango zan
Arren urrengo golpia.

17
Pasadizuac declaratubaz
Banua arrazoyan,
Nere gorputza estu ceguan
Celataco garayan:
Odol guciac iraquiñ eta
Barrena lertu nayan,
Ots eguiñ niyen: ¡ederqui zaute
Dama-galayac oyan!

18
Cer pasatzen zan itz eguiñ niyon
Nescacha orren amari,
Errespuesta arc eman ciran
Ecer etzala lan ori:
Orlaco itzac ez zayo aditzen
Iñon guraso onari,
Cantac argatic jarritzen zaizca
Gaizqui portatzen danari.

19
Beguiyen vistan neronec dauzcat
Gauza oyec icusiyac,
Berri onican ez du seculan
Orren persona lasayac:
Libertadian oitutacuac
Lotutzen ditu etsayac,
Descalabroric ez det eguiñ da,
Jaungoicoari graciyac.

20
Nolacua dan icusitzeco
Jarri obrari beguira,
Modu orretan ibilli dana
Ursula Juambeltz ori da:
Sentidurican duenarentzat
Motivo franco badira,
Culpa gabia etzeguan ta
Eman diot despedida.

21
Martirena det apellidua,
Francisco daucat icena,
Neroni naiz ni nescach-orrequiñ
Orla guertatu naicena:
Munduba ondo pasatutzeco
Ai cer alhaja zucena,
Sinista zazu zu utzi eta
Contentuz bici naicena.

22
Emezortzi daduzca orrec,
Oraindic dama gaztia,
Orrelacuac guchi obiac,
Asco comeni eztia:
Naico du orrec bere inguruan
Bata ez bada bestia,
Artu banuben calto neretzat,
Mesede det nic uztia.

23
Recuerdotzat izan citzala
Nic eman erregaliyac,
Bost durocua erraztuna ta
Guero zapata berriyac:
Escusa gabe artu cizquiran
Dama engañagarriyac,
Quendu nizcan ta beste batentzat
Pronto an dauzcat jarriyac.

24
Desio zuen verso berriyac
Orra Franciscoc atera,
Al-dan guztiya zabaldutzeco
Naparroaco partera:
Cer pasatu dan icasitzeco
Emen badago auquera,
Gogo duenac artu dezala
Bost centimuan papera.

Donostiyan.—Antonio Pozo-ren moldizteguian.

Ynazio Zabala Alzo